# Urtean Zeharreko XXXIV. eta azken Domeka

# JESU KRISTO GURE JAUNA, DIRAN GUZTIEN ERREGEA

## A urtean

## I. IRAKURGAIA

*Zuei, ene ardioi, hau dinotsuet:*
*Neuk erabagiko dot auzia ardi batzuen eta besteen artean.*

Ezekielen Profezia liburutik

*Ez* 34, 11-12. 15-17

Hauxe dino Jainko Jaunak: «Ni Neu egingo naz artaldearen kargu, Neu arduratuko haretaz. Artzaina, artaldea sakabanatu jakonean, ardiakaz arduratzen dan lez, halantxe arduratuko naz Ni neure ardiakaz; egun lainotsu eta ilunean sakabanatutako toki guztietatik atarako ditut.

Nik Neuk larratuko ditut ardiak eta Neuk hartuarazoko deutset atseden –dino Jainko Jaunak–. Ardi galduaren bila joango naz, desbideratua artaldera batuko dot, hanka hausia lotuko, gaixoa indartuko; gizenak eta indartsuak zainduko ditut. Behar dan lez larratuko

ditut ardiak».
Zuei, ene ardioi, hauxe dinotsuet Nik, Jainko Jaunak: «Neuk erabagiko dot auzia ardi batzuen eta besteen artean, aharien eta akerren artean».
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 23 [22], 1-3. 5. 6 (R/. 1)

R/. **Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean.**

V/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean;
larre gurietan etzunarazoten nau,
ur-bazter nasaira eroaten
eta indarrak deustaz barritzen;
bide segurutik naroa,
bere izenari ohore eginez. R/.

V/. Mahaia atontzen deustazu
arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.

V/. Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Kristok Jainko Aitari erreinua emongo deutsonean, Jainkoa guztietan guztia izango da.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 15, 20-26. 28

Senideok: Biztu da Kristo hilen artetik, heriotzatik biztuko diranetan lehen-frutu. Izan be, heriotza gizon baten bidez etorri zan lez, gizon baten bidez etorri da hildakoen biztuera be. Eta Adamegaz daben alkartasunagaitik gizaki guztiak hiltzen diran lez, Kristogaz daben alkartasunagaitik guztiak bihurtuko dira bizira. Baina bakotxa bere sasoian: lehenengo Kristo, lehen-frutua danez; gero, Kristorenak, hau barriro etortzean. Gero, azkena izango da, Kristok, Jainkoaren kontrako nagusitza, aginte eta indar guztiak ezereztu ondoren, Jainko Aitari erreinua emongo deutsonean. Kristok errege izan behar dau-eta, Jainkoak arerio guztiak haren oinazpian ipini arte. Azkena ezereztuko dan arerioa heriotza izango da.

Jainkoak gauza guztiak menpean jarriko deutsozanean, Semea bera menpean jarriko jako gauza guztiak menpean jarri eutsozanari, eta Jainkoa

danetan dana izango da.
Jaunak esana.

Aleluia

*Mk* 11, 9. 10

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena!
Bedeinkatua datorren erreinua,
gure aita Daviden erreinua! R/.

## EBANJELIOA

*Bere errege-aulki ospetsuan jesarriko da,*
*eta batzuk besteengandik bananduko ditu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 25, 31-46

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Gizonaren Semea –eta aingeru guztiak haregaz– aintzaz beterik etortzean, bere errege- -aulki ospetsuan jesarriko da, eta herri guztiak haren aurrean batuko dabez. Harek batzuk besteakandik banandu egingo ditu, artzainak ardiak ahuntzengandik banatzen dituan lez: ardiak bere eskumaldean ipiniko ditu,

eta ahuntzak ezkerraldean.

Orduan, erregeak esango deutse eskoikoei: “Zatoze, nire Aitaren bedeinkatuok; hartu egizue munduaren sortzetik zuentzat prestaturik dagoan erreinua. Ze gose nintzan, eta jaten emon zeunsten; egarri, eta edaten emon; arrotz, eta etxean hartu ninduzuen; biluzik nengoan, eta jantzi egin ninduzuen; gaixorik, eta bisitatu; espetxean, eta ikustera etorri zinien”.

Orduan, zintzoek erantzungo deutsoe: “Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik, eta emon geuntsun jaten, edota egarri, eta edaten emon? Noiz ikusi zinduguzan arrotz, eta etxean hartu, edota biluzik, eta jantzi? Noiz ikusi zinduguzan gaixorik edota espetxean, eta ikustera joan?”

Eta erregeak erantzungo deutse: “Bene-benetan dinotsuet: nire senide txikien honeetariko bati egin zeuntsoena neuri egin zeunsten”.

Gero, esango deutse ezkerrekoei: “Alde nigandik, madarikatuok, deabruarentzat eta haren lagunentzat prestatuta dagoan betiko surtara. Ze gose nintzan, eta ez zeunsten jaten

emon; egarri, eta ez zeunsten edaten emon; arrotz, eta ez ninduzuen etxean hartu; biluzik, eta ez ninduzuen jantzi; gaixorik eta espetxean nengoan, eta ez zinien ni ikustera etorri”.

Hareek erantzungo deutsoe: “Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik edota egarriz, arrotz edota biluzik, gaixorik edota espetxean, eta guk lagundu ez?”

Harek erantzungo deutse: “Benetan dinotsuet: txikien honeetariko bati egin ez zeuntsoena, neuri ez zeunsten egin”.

Eta honeek betiko zigorretara joango dira; zintzoak, barriz, betiko bizitzara».

Jaunak esana.

___________________________________M

# Urtean Zeharreko XXXIV. eta azken Domeka

# **JESU KRISTO GURE JAUNA, DIRAN GUZTIEN ERREGEA**

# **B urtean**

## I. IRAKURGAIA

*Haren agintea betikoa.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn* 7, 13-14

Neure gau-ikuskarian, gizaseme antzeko bat ikusi neban zeruko hodeietan etortzen. Gizon zaharragana hurreratu zanean, beroni aurkeztu eutsoen. Agintea, aintza eta erregetza emon eutsoen: herri, nazino eta hizkuntza guztietako jenteak zerbitzen eban.

Haren agintea betikoa, ez da inoiz amaituko;
haren erregetza ez da inoiz hondatuko.
Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 93 [92], 1ab. 1c-2. 5 (R/. 1a)

R/. **Errege da Jauna, ospez jantzia.**

V/. Errege da Jauna, ospez jantzia,
Jauna indarrez jantzia eta inguratua! R/.

V/. Sendo ezarrita dago mundua,
ez dago kili-kolo.
Zure tronua sendo ezarrita dago betidanik,
betikoa zara Zu! R/.

V/. Zure erabagiak fidagarri dira;
zure etxea santutasunez eder, Jauna,
betiko egunetan. R/.

## II. Irakurgaia

*Munduko buruzagiak*
*Jainkoarentzat errege eta abade dan herri egin gaitu.*

Apokalipsia liburutik

*Ap* 1, 5-8

Grazia zuei eta bakea Jesu Kristoren aldetik, testigu leiala, hilen arteko lehenengo biztua eta munduko erregeen buruzagia danaren aldetik. Maite gaituanari eta bere odolaz geure pekatuetatik askatu gaituanari, Jainko bere Aitarentzat errege eta abade dan herri egin gaituanari, aintza eta agintea gizaldi eta gizaldietan. Amen.

Hara, hodei artean dator!
Danek ikusiko dabe,
baita zulatu ebenek be,
eta lurreko leinu guztiek
hileta-negarra egingo dabe harengaitik.
Bai. Amen.

Hau dino Jainko Jaunak: «Neu naz Alfa eta Omega, badan, bazan eta etortzekoa dan ha, Ahalguztiduna».

Jaunak esana.

Aleluia

*Mk* 11, 9. 10

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena!

Bedeinkatua datorren erreinua,
gure aita Daviden erreinua! R/.

## EBANJELIOA

*Errege naz, zeuk dinozun lez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 18, 33b-37

Aldi haretan, Pilatok esan eutson Jesusi: «Zu zara judeguen erregea?» Jesusek erantzun: «Zuk zeurez itauntzen deustazu hori ala besteek esan deutsue hori Nitaz?» Pilatok esan eutson: «Judegua ete naz, ba, ni? Zeure herritarrek eta abadeburuek ekarri zaitue nigana. Zer egin dozu?»

Jesusek erantzun: «Nire erregetza ez da mundu honetakoa. Nire erregetza mundu honetakoa balitz, nire jenteak burruka egingo leuke, Ni judeguen eskuetan ez jausteko. Nire erregetza, ostera, ez da hemengoa». Orduan, Pilatok esan eutson: «Beraz, errege

zara Zu?»

Jesusek erantzun eutson: «Bai, errege naz, zeuk dinozunez. Honetarako jaio eta etorri naz mundura: egiaren testigantza egiteko. Egiarena danak entzuten dau nire ahotsa».

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XXXIV. eta azken Domeka

# JESU KRISTO GURE JAUNA, DIRAN GUZTIEN ERREGEA

## C urtean

### I. IRAKURGAIA

*David Israelgo errege igurtzi eben.*

Samuel bigarren liburutik

*2 Sm* 5, 1-3

Egun hareetan, Israelgo leinu guztiek Hebronera Davidengana etorri eta esan eutsoen: «Zeure odolekoak gaituzu. Lehenago be, Saul gure errege zanean, zeuk gidatzen zenduzan Israelen joan-etorriak. Gainera zuri esana deutsu Jaunak: "Zeuk gidatuko dozu nire herri Israel eta zeu izango zara israeldarren agintaria"».

Etorri ziran, beraz, israeldarren buruzagi guztiak David erregeagana Hebronera, eta honek hitzarmena egin eban hareekin Hebronen, Jaunaren aurrean. Eta hareek Israelgo errege igurtzi eben.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 122 [121], 1-2. 4-5 (R/. ik. 1b)

R/. **Goazen pozik Jaunaren etxera!**

V/. Ha poza nirea, esan eustenean:
«Goazen Jaunaren etxera!»
Hona orain nire oinak
zure ateetan, Jerusalem. R/.

V/. Hara igoten dabe leinuek, Jaunaren leinuek,
Israelen lege danez, Jaunaren izena gorestera.
Han dagoz ezarriak auzi-mahaiak,
Daviden jauregiko mahaiak. R/.

## II. Irakurgaia

*Bere Seme maitearen erreinura aldatu gaitu.*

San Paulo Apostoluak Kolosarrei egindako epistolatik

*Kol* 1, 12-20

Senideok:

Eskerrak emoten deutsaguz Aitari,
argiaren erreinuan
bere santuentzat prestaturik dituan ondasunetan
parte izateko gai egin gaituanari.
Ilunpearen menpetik atara gaitu,
eta bere Seme maitearen erreinura aldatu;
honengan dogu askapena,
honengan pekatuen parkamena.

Jainko ikusezinaren irudi da Kristo,
sorkari guztietan lehen-sortua.
Haren bidez sortu ebazan Jainkoak
zeru-lurretan diran gauza guztiak,
agiri diranak eta ez diranak:
munduan eragina daben ahalmenak,
nagusitzak, aginteak eta botereak;
sortua izan dan guztiak Kristo dau eredu eta helburu.
Gauza guztiak baino lehenagokoa da ha,
eta berari esker diraue.

Bera da gorputzaren buru, Eleizearena, hain zuzen be.
Bera da hasiera, hildakoen artetik lehen-biztua,

gauza guztietan ha izan dadin lehenengoa;

Jainkoak nahi izan dau-eta
bere izaeraren betea Kristogan egotea,
eta honen bidez gauza guztiak beragaz adiskidetzea,
Kristok kurutzean isuritako odolaz bakeak eginez
zeruko eta lurreko gauza guztiekin.

Jaunak esana.

Aleluia

*Mk* 11, 9. 10

R/. **Aleluia.**

V/. Bedeinkatua Jaunaren izenean datorrena!
Bedeinkatua datorren erreinua,
gure aita Daviden erreinua! R/.

## EBANJELIOA

*Jesus, gogoratu zaitez nitaz,*
*zeure erreinura heltzean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 23, 35-43

Aldi haretan, agintariek burlaka ziharduen Jesusi, esanez: «Besteak salbatu jozak; salbatu dagiala bere

burua, Jainkoaren Mesias, Aukeratua, bada».

Soldaduek be burla egiten eutsoen; hurreraturik, ozpina eskeintzen eutsoen, esanez: «Judeguen erregea bahaz, salbatu egik heure burua!» Gainean idazkun hau eukan: HAU JUDEGUEN ERREGEA DA.

Kurutzetik dindilizka egozan gaizkileetariko bat Jesusi irainka ebilkon: «Hi ez haz, ba, Mesias? Salbatu egik heure burua eta salbatu gagizak geu be!»

Baina besteak agiraka egin eutson, esanez: «Zigorra jasoten hagoala be ez deutsak bildurrik Jainkoari ala? Gurea legezkoa dok, ze, geure eginakaitik merezia joaguk; baina honek ez jok ezelako okerrik egin». Gero, esan eban: «Jesus, gogoratu zaitez nitaz, zeure erreinura heltzean».

Jesusek erantzun eutson: «Benetan dinotsut: gaur Neugaz izango zara paradisuan».

Jaunak esana.